# ABENDUALDIKO I. DOMEKA
C urtean

## I. IRAKURGAIA

*Legezko ondorengoa sortuazoko deutsat Davidi.*

Jeremias Profetaren liburutik

*Jr* 33,14-16

Hauxe dino Jaunak: «Begira, badatoz nik Israelgo herriari eta Judako herriari emondako hitz onak beteko ditudan egunak.
Egun hareetan eta sasoi haretan,
legezko ondorengoa sortuazoko deutsat Davidi,
eta zuzenbidea eta justizia ezarriko ditu lurrean.
Egun hareetan Juda salbatuko da
eta Jerusalem nasai biziko.
Hona uriari emongo deutsoen izena:
"Jauna gure zuzentasun"».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 25 [24], 4-5b. 8-9. 10 eta 14 (R/. 1b)

R/. **Jauna, Zugana jasotzen dot gogoa**.

ABN01C – Sal 024

Udaia'15

Jau - na, zeu - ga - na ja - so - tzen dot go - go - a.

V/. Azaldu niri, Jauna, zeure bideak,
erakutsi zeure bidezidorrak.
Gidatu nagizu zeure leialtasunean, eta irakatsi,
Zu zara-eta nire Jainko salbatzailea. R/.

V/. Ona eta zuzena da Jauna,
bidea erakusten deutse pekatariei.
Apalak zuzenbidez daroaz,
bere bidea erakusten deutse apalei. R/.

V/. Jaunaren bide guztiak maitasun eta leialtasun
haren ituna eta aginduak gordetzen dabezanentzat.
Bere barrua azaltzen deutse Jaunak begirune deutsoenei,
bere ituna ezagutu azoten deutse. R/.

## II. Irakurgaia

*Sendotu dagoala Jaunak zuen bihotza,*
*Kristo etorriko danerako.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako lehenengo epistolatik

1 *Ts* 3, 12—4, 2

Senideok: Egin dagoala Jaunak gero eta handiago zuek alkarrentzat eta danentzat dozuen maitasuna, handia dan lez guk zuentzat dogun maitasuna. Holan, sendotu dagoala zuen bihotza, Jesus gure Jauna bere santuakaz etortzean, santu eta esankizun barik aurkeztu zaitezen gure Aita Jainkoaren aurrean.

Gainerakoan, senideok, eskari hau egiten deutsuet, arren eta arren, Jesus Jaunaren izenean: Jainkoari atsegin emoteko zelan bizi gugandik ikasi zenduenez, ahalegindu zaiteze gero eta gehiago holan bizitzen. Badakizue zelako irakaspenak emon geuntsuezan Jesus Jaunaren izenean.

Jaunak esana.

Aleluia

*Sal* 85 [84], 8

R/. **Aleluia.**

V/. Erakutsi guri, Jauna, zeure maitasuna,
emon zeure salbazinoa. R/.

## EBANJELIOA

*Zuen askatasuna gero eta hurrago dago.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 21, 25-28. 34-36

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: Seinaleak izango dira eguzkian, iretargian eta izarretan, eta estu ibiliko dira lurrean herrialdeak, itsasoaren orroaz eta olatuen indarrez artegaturik. Arnasarik barik geldituko da jentea, munduari gainera datorkionaren bildurrez, ortzia be dardaratuko da-eta.

Orduan, Gizonaren Semea indartsu eta aintza handiz hodeian etortzen ikusiko dabe. Hori guztia gertatzen hastean, izan bihotz eta jaso burua, ze, hurreratuz dator zuen askapena».

«Zabiltze kontuz! Ez bedi moteldu zuen bihotza edanaz, mozkorkeriaz eta bizitza

honetako kezkaz, egun ha ezustean gainera etorri ez dakizuen, ze, sarea bezala etorriko da lurrean bizi diran guztien gainera. Beraz, egon zuhur eta egin otoitz eten barik, etorri behar daben horreei guztiei ihes egin ahal deiozuen eta zutunik egon ahal zaitezen Gizonaren Semearen aurrean».

Jaunak esana.